# ¡OH ZU CECEN SUZCOA!

YDIYARENAREN SOÑUAN.

Damboliñaren girac calean
daramatzi gendeac airean
chistuaren
ta atabalen
soñu alayean.
Errico biztanle guciac
plazara dirade etorriac,
arratzeco
ceceneco
suac ecarriac.
Oh! Donostico Cecen-suzcoa
izan zaitez zorionecoa!

---

Irtena da cecena arcupetic,
chingarra dariola atzealdetic,
dambadaca,
ta giraca
gendeen tartetic.
Zalapart artan cembat nazpill,
cembat carrashi, cer iscambill,
itzumuca,
trumbulluca,
gende dena dabill.
Oh! zu, Cecen onen Autorea
izan zaitez gloriz betea!

---

Damacho gazte ta galay fiñac
elcarri adi bat ecin eguiñac
arcupetan,
quiriquetan,
¡Ay cer aleguiñac!
Cecen-suzcoa bada auzoan,
igues eguñ nairic asmoan,
ceren larri
diran jarri
elcarren ondoan.
Oh! Cecen pizcor chingar jariyo
cembat conthu zure mediyo!

---

Su-curpillac dijoaz astera,
Cecen-suzcoa igo dute oltzera,
argui pillac,
su bombillac,
dijoaz airera.
Ceren argui politac dira
maite degunari beguira,
bat batetan,
beguietan,
icusten badira.
Oh, bai, dira, bai, chit chingartiac
biotz-suzco baten arguiac!

---

Bejondaizula Cecen-suzcoa,
Donostiarren invencioa,
gazteentzat,
ta zarrentzat
fest gain gañecoa.
Ez, bada, gendeac naguitu,
plazara joan gabe ez gueldittu,
far asco eguiñ,
dantzatu ariñ,
ta asco divertitu.
¡Cecen-suzco eder on deguizula,
gaur ta beti bejondaizula!

(Serafín Baroja.- "Cecen-suzcoa", hoja suelta del domingo de carnaval de 1879.)

(201)